

AZALEKO IRUDIA
**Itziar Moreno Martinez**
1982
Bilbo

Atxilotze data: 2011ko apirilaren 10a.

Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia

**atara**miñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

ISBN: 978-84-947954-2-8
Lege gordailua
Depósito legal
Dépot légal
SS-1288-2017

**atara**miñe 2017
**www.literaturakoadernoak.org**

# Aurkibidea

# Hitzaurrea

"Seacliffeko ospitalean eman nituen sei asteak, inoiz izango zenik ere uste ez nuen leku hartan, zoramenaren izugarrikeriaren ikasgai laburtu bat izan ziren. Han igarotako lehen uneetatik jakin nuen ezingo nintzela itzuli nire usuko bizitzara, ezingo nuela ahaztu ikusitakoa. Beste eraikin batzuetan bakartutako jendeek ez zuten izenik, ez iraganik, ez etorkizunik, giltzapetutako oraina besterik. Orain-lur betierekoa, ortzemugarik gabea".

Janet Paterson Frame idazle zeelandaberritarraren hitzak dira hauek, bera ez zuten espetxeratu, ospitalean ingresatu baizik. Berrogeita hamarreko hamarkada aldera izaeraren desorekak elektroshock kolpeka osatu zitezkeela uste zen. Janet Patersonen amak alaba lobotomia bidez zentzatzea espero zuen, baina buru ebakuntzaren zain zegoela, Janetek izkutuan idatzitako "Lagoon" liburuak Zeelanda Berriko literatur sari nagusia, Hubert Churh Memorial Prizea, irabazi eta buru garbiketatik libratu zen. Idatzitako hitz bakoizak heriotza mentaletik urrundu zuen, ebakuntzaren (eta amaren erabakiaren!) aurka erlojupeko lasterketan buru garbiketatik libratzeko bide bakarra izan zuen: idaztea.

Bilduma honetan elkartu diren sortzaileak ez daude ospitale psikiatriko batean ingresatuak espetxean baizik. Dena den, Erving Goffmanen "instituzio total"aren nozioari helduta, espetxean ere bertan atxikia dagoenaren bizitza da erabat eta orobat neurtu, ebaluatu eta "zuzendua". Bizitzaren ertz guztiak irensten dituen munstro bezala irudikatu litezke bata zein bestea. Janet Paterson, ozta-ozta iskin egingo zion lobotomia batetara kondenatua zegoen, espetxean dagoenaren patua lobotomia izan ez arren,

pertsonaren izaeraren desartikulazio goitik beherako bati lotua dago. Espetxeak hiltzen du eta Euskal Herrian baieztapen honen adibide zoritxarrekoak ez dira falta, bilduma honetan bertan, bere kontrazalean ageri zaigun Kepa del Hoyo azkena. “Kausa naturala” egotzi izan da halako kasutan, baina Mikel Antzaren “Ametsak ere zain” liburuko zenbait hitzen oihartzuna gurera ekarriz, azter ezazue gorpua, hiltzaileen izenak bere baitan tatuatuta daramatzanez.

Espetxean zail da ezer kasualitate izatea, kausalitate segida makabro bat akaso, dinamika instituzional eta instituzionalizanteak ezinbestean garamatzan emaitza definitiboa. Hala irudika dezakegu presoa espetxean, esnatzen den unetik beretik batailara salto eginez. Herio betezko patuari aurre egiteko estrategiak asmatuz, biziraungo badu. Joseba Sarrionandiaren letra zenbait oroimenera ekarriz, “barnean dudan mundua ez da barnean naukan gelan kabitzen”. Sorkuntza, dela letrazkoa, irudizkoa, hari, harri edo egur tailatuzkoa, aipatzen den “barne mundu” hori elikatzeko bitartekoa izan bada. Hain zuzen, mundu guztiak kabitu litezkeen norbere baita zaintzeko bitartekoa dugunez sorkuntza. Zer esanik ez espetxeari dagokionean. Burdin elorri arantzez zedarritutako zerumugaz haratago joan nahi izanez gero, espetxeratuak bere baitara begiratzen du, perspektiba zabalago baten bila.

Ikuspegia zabaltzeko, bizirauteko estrategien bilduma txiki bat duzu esku artean. Askotarikoa, bakoitzak bere bidea egin behar duenez. Hain zuzen, preso haina espetxe daudela esan liteke, arrakalatzen dena norbere baita propioa izan badenez. Hartara, preso-sortzaile bakoitzari bere estrategia dario. Berebizikoa deritzogu estrategia hauen ikustaraztea, barrote artean arnas-

tuz borrokan dagoen kide bakoitzaren ahaleginari omenalditxo bat, goraipatze bat egiteko bilduma. (Espetxetik kanpo dagoen) Irakurleak, akaso, topa lezake lerro artean irrifar, malko, hortz estutze erabilgarriren bat. Ezin ahantzi baitezakegu, gaur egun, araua, instituzioa, ordena, burdin arantzez mugatutako espaziotik haratago zabaltzen dela.

Ongi etorri beraz, murruko arrakalen plazatxo honetara.

*Ataramiñe'2017*



**Karlos Cristobal Martinez**
1964
Sondika

1996ko uztailaren 24tik hona dago espetxean.

Centro Penitenciario Botafuego
11206 Algeciras
Cádiz

## BIDAIA

### Algecirasen, 2017ko martxoaren 29a

Arratsaldeko seiak aldera, orduan esan didate itxaroten ari nintzen eguna iritsi dela, gurasoak ikusteko kondukzioan noala. Zaballako espetxera eramango naute. Eskatu nuen haiek ikusteko baimen berezia onartu didate. Etxean, gurasoekin, ordubete inguruan egon ahal izateko. Haiek ikusi gabe lau urte baino gehiago eman ostean, gurasoak besarkatzeko *baimena* eman dit Zaintza Epaileak, espetxeak hori bera ukatu baitzidan. Orain, aldiz, etxera ailegatu ostean, haiengandik berriro urruntzeko unea iristean, ez dakit prest egongo naizen.

Bidaia dela-eta, ziegan neukan guztia jaso behar izan dut, dena, *Ingresos* modulura eramateko, agindu didaten lez. Hasi dut, dena planifikatu nahian; buruan, askotan, antolatuta neukan plangintza egin nahian. Lehenengo minututako urduritasuna igaro ostean lortzen joan izan naiz. Ziega hutsik geratu da, itxura triste zerion.

Afarirako ziegetako ateak zabaldu dituztenean, adiskideak eta lagunak patiora jaitsi diren bitartean, nik nire gauzak sarrera modulura eraman ditut. Bidaian eramango dudana zein, hemen, erretenituta utziko dudana. Modulutik irten aurretik, adiskideak agurtu ditut, gaua beste modulura igaroko nuelakoan. Itzuli arte ez nituen berriz ikusiko. Preso sozialak ere etorri zaizkit agurtu nahian. Betebeharreko errituala. Badakit horietako batzuk, bueltan ez dira hemen egongo, modulu edo espetxez aldatuko baitituzte. Adiskideekin berdin gerta daitekenaren beldurrez ekingo diot bidaiari.

Sarrera modulura eraman ditudan poltsak, bakoitzean etiketa bana jarriz, identifikatu dituzte. *Amerikana* batean (gela barrote-

dun batean) itxaroteko esan didate. Nik uste nuen betiko ziega batean afaldu eta lo egingo nuela. Ba, ez! Nengoen modulura bueltan bidali naute, nerabilen ziegan lo egiteko.

Bihar goizean sarrera modulura eramango naute, Guardia Zibilen kondukzio-autobusean igotzeko. Biharko kondukzioa Puerto IIIra doa.

Espetxe Zaintza Epaitegi Zentralak gurasoak ikusteko bidaia onartzen didanaren autoa eman zidatenetik sei egun igaro dira. Segi egun urduri, ezjakintasunaz janda: noiz, zelan, nondik, noiz arte... eramango ninduten jakin gabe. Urduri gurasoak ikustera naramatelako. Gutxiago jaten.

## Martxoak 30

Gutxi egin dut lo. Begiak zabaltzean, ziega hutsik, triste, hotz antzeman dut, hormek ere txuriago ziruditen. Askotan bizi izandako esperientzia ahaztu honen aurrean, sentsazio arraro samar nabaritu dut.

Gosaria. Mahai berean lagunekin. Erlaxaturik. Bukatu bezain pronto, aldiz, deitu didate. Beraz, agurtzeko errituak errepikatu behar izan dut. Sarrera modulura joan, tramiteak egin, miaketak, autobusera igo eta bidaiari ekin. Puerto IIIan nire zain daude.

Iritsi, eta betikoa. Miaketa integrala: biluzik. Gaua igarotzeko lau gauza hartu, eta ziegara. Isolamenduko lehenengo galerian. Bazkaldu eta egun osoa ziegatik atera gabe emango dut. Egun bakar bat Puerton eta, bihar, Kordobako bidaia. Pozik.

Bada, ezin dut ezer ziurtzat jo. Nahiz eta funtzionario batek bihar banihoala esan, arrastian kontrakoa esan didate: gutxienez, astelehenera artea hemen geratuko naizela. Bat-batean, disfrutatzen nuen poztasuna pikutara joan da. Berriz, lau egun Puerto IIIan, isolamendu moduluan, bakartze zigorrak ordaintzen ari direnen galerian. Duela zazpi urte bezala. Horregatik Algecirasera eraman ninduten. Orduko ondoko ziegan sartu naute.

Ez dut oraindik galeria honetan egun oso bat bete, eta, jada, arrastian zigorturik ekarri duten senegaldar-galego batentzat psikologo hezitzailearen lana egin dut. Ondo ziega batean sartu dute, urduri xamar; zer gertatu zaion eta zergatik zigortu duten ulertu (nahi) gabe; hitz egiteko behar aseezinaz. Ni, aldiz, ikasteko ezin kontzentratu, zegoen zaratagatik. Beraz, bere egoeraz hitz egin dugu.

Galerian zeunden beste presoekin berba egiten, Algeciraseko kartzelan ezagutu nuen malagar bat topatu dut, bakartze zigorra ordaintzen ari zela. Duela urte bat Algecirasetik Ocañako espetxe zaharrera eraman zuten. Ondo zebilen bertan: lana, soldata, aske irteteko data aurreratzeko aukera... baina arazo batzuk zirela bitarte, zigortuta Puerto IIIra ekarri zuten.

Nekatuta nago. Gutxi bazkaldu badut, gutxiago afaldu dut. Gainera, oheratu aurretik, ohea egin behar dut. Oraindik ez dut ziega guztiz egokitu.

## Martxoak 31

Atzo urduri banenbilen, gaur, aldiz, erlaxatuago. Astelehenera arte hemen utziko nautela barneraturik, egun hauetarako plangintza desberdin bat burutu dut. Gaur, Kordoba eta Madriletik joan ordez, astelehenean Extremaduratik eramango nautela pentsatzen dut.

Goizean patiora atera naiz, lau ordu, ni bakarrik. Ibili, irratia entzun, irakurri eta ikasi. Goiza horretan eman dut.

Bigarren eguna dutxatu gabe. Ez dut oraindik txankletak eta toailaren bila joatea lortu. Eskatu dudan arren, ez didate kasu handirik egiten.

*Voto de silencio* egingo banu bezala. Horrelaxe nabil. Ia egun osoa inorekin berba egin gabe. Patioan, bakartuta eduki banaute, senegaldarra goizean eraman dute. Galeriako beste presoek beraien artean soilik hitz egiteko joera daukate. Klausurako monastegi batean banengo bezala bidaia egingo dut, gelditzen zaidana antzeko baldintzetan izango delakoan bainago. Bidaia hastean ez nintzen bakardade gazigozo honekin akordatzen. Dena den, preso sozial askok haien solasaldietan jorratzen dituzten gaiak entzun ondoren, nahiago dut bakardadeaz gozatzea. Nahiz eta hemendik dauden gehienak berritsu hutsak izan, ez da batere erraza solaskide on bat bilatzea patio hauetan.

## Apirilak 1

Patiora arratsaldeko txandan aterako nautela esan didate. Azken zortzi-bederatzi egunetan pilatzen joan zaidan urduritasunaren eragina nabaritzen hasi naiz. Urdailean pairatzen ari naiz. Eta ordu gutxi egiten dut lo. Gainera, moduluko ekonomatuan erosketak egiten ditudanean, eskatzen dudan produktuaren kantitate handiagoa ekartzen didate, eta gehiago kobratu ere.

Aurreko guztia dela eta, txankletak eta toaila eskatzea ahaztu egin zait. Hirugarren eguna dutxatu gabe. Bada, berriro, konketan eta toaila txiki batekin egin beharko dut. Oinak ere konketan sartzen, ur hotzez.

## Apirilak 2

Azken eguna Puerto Illan. Bihar, bidaiaren bigarren etapari ekingo diodala aipatu baitidate. Hala bada, biharko gaua Extremaduran egin nezake. Eta, hortik Castilla-Leonera. Nondik eta nora? Ez dakit.



Patioan nabil, goizeko txandan atera bainaute. Kafea hartu berri dut, ekonomato eskaera oraintxe ekarri baitidate, goizeko 11:10etan.

Boligrafoaren minarekin idazten ari naiz, patiora sartu aurretik plastikozko zorroa kendu didatelako. Lehenengo graduan sailkatuta naukatelako. Horrelaxe arrazoitu didate. Atzo eta herenegun, ordea, ez zidaten kendu. Bada, espetxeko betiko ohikotasuna: ez duzu inoiz, hurrengo egunean, araua berdin aplikatuko duten jakingo.

## Granada. Apirilak 3

Lasai eta, aldi berean, haserre. Lasai, Euskal Herrira igotzeko bidean bainabil, inon gehiago itxaron gabe. Mediterrareoko bidetik naramaten, azkarrago Granadako Albolote espetxean aurkitzen naiz. Hasieran aurreikusten nuen bidean, harik eta Puerto IIIra -beste alderuntz- eraman ninduten arte. Gaur, Granadan, dutxa bero on bat hartu ahal izan dut; Puerton ezin izan nuena.

Aldiz, haserre, Granadara doan kondukzioa Algecirasen bertan hartu ordez, Puertora eraman nindutelako, lau egun beranduago berriro Algecirasetik pasatzeko. Madrilgo bulego baten, lau egunez *trantsito* egin nezan, Puerto IIIra eramango nindutela erabaki zuten. Beraz, joan den aste burua bisita gabe utzi zidaten. Baita ere, gurasoekin telefonoz berba egin gabe. Hau da. Algecirasetik gaur igarotzen zen kondukzioan sartu ordez, lau egun lehenago Puerto IIIra eraman ninduten, sendiarekin komunikatu gabe utziz. Jokaldi ederra egin didate.

*Ingresos* moduluan sartu naute, arrastia eta gaua igarotzeko, bihar Murtziaraino -Almeriatik- eramango bainaute.

Sierra Nevada ikusten ari naiz. Zati txiki bat ikus dezaket, teilatu gainetik; halere, zoragarri, elurrez tindaturik. Aspalditik, halako paisaia ikusi gabe. Bihar, Almeriako eta Murtziako basamortu paisaiak.



## Apirilak 4

Murtzia. Espetxe berrian. Isolamenduko galeria batean, arrastia eta gaua igarotzeko. Lau gara: murtziar, saharar, marrokoar eta euskaldun bana. Aspaldiko txiste txar bat kontatzera banindoan bezala.

Murtziarra eta sahararra ez dira ixiltzen, leiho batetik bestera hitzak doaz eta bueltan datoz, isilune xume bati tarte apur bat eman  gabe. Gainera, haien ziegen artean, ni. Erdiko ziegan. Beraz, irratiko aurikularrak ipinita, haien negozio eta kontuak ez entzuteko. Zoritxarrez, sahararra ezagutzen dudala konturatu naiz. Algecirasen elkarrekin ibili ginen. "Mundua zapi bat da", esan dit. Ordea, eta gauden egoeran, nik ideia hori birplanteatuko nuke, espetxe sistema zapi zikin eta krudel bat dela esateko, non barruan gaudenok edonon eta edonoiz gure artean, behin eta berriz topo egiten dugun.

Aulki bat badaukat, ziegan. Granadako trantsito ziegetan ez dago aulkirik. Imagina ezazue zelan egin behar nuen bazkaltzeko eta afaltzeko, edo idazteko. Zutik, jan ahal izateko, dagoen porlanezko mahaiaren ondoan. Aspalditik garbitu ez duten mahai ziztrin bat. Eta ohean eserita idazten nuenean. Leiho aurrean, tamalez, bost bat metrora, murru bat dago. Ordea, ortzia ikus daiteke murru gainetik. Nire solaskideen arabera, ondoan emakumeen modulua daukagu. Haren burmuinean, abestiak zioen lez, "sexu, droga ta...".

Puerto IIIan janaria hartzeko bandeja nik garbitu behar izan nuen. Estropajo zati bat eta *mistol* antzeko zerbait eman zizkidaten. Granadan, aldiz, bazkaldu eta afaldu ostean, ziegarik ziega, erretiluen bila zetozen, eramaten zituzten, eta hemen ez dago bandejarik. Haren ordez, sakotontzi txiki bi banatzen dituzte, gehi haiek garbitzeko likido apur bat, mostratxarik gabe.

Sei egun kondukzioan, jada, Euskal Herrira joateko. Hiru espetxetan lo egiten. Bihar, Valentzia aldera.

Bizarra egin beharko nuke, baina, transitoan izanik ez didate ezer salduko edo emango horretarako. Are gehiago, hortz-eskuila erosten saiatu naizenean, kirtena erditik moztu beharko luketela aipatu didate. Baldintza horrekin ez dut erosi. Ez didate horren argudiorik eman. Ez diet galdetu, betiko *segurtasun* arrazoia dela badakidalako. Isolamendu askotako ergelkeria.



## Valentzia. Apirilak 5

Isolamendu galeria zaharberritu batean  sartu naute. Ziega ikustean, Herrerako isolamendu moduluko ziegekin akordatu naiz. Nahiz eta desberdintasun nabariak izan, ziega hauek daukaten *xarmak* Herrera de la Manchako isolamenduan izandako egonaldiak gogorarazi dizkit. Zorionez, hemen, berritze lanaren ondorioz, dutxa ipini dute (lehen ez zegoen). Komuna eta konketa ere berriak dira.

Arrastian, patiora ateratzen utzi didate. Espetxe batzuetan (Puerto III edo Granada, esaterako), gaua pasatzeko eramaten bazaituzte, arratsalde horretan ez dizute patiora irtetea uzten; nahiz eta goiz osoa Guardia Civilaren autobus barruan eman. Bi ordu egin dut, Herreran kideek daukatena baino handiagoa den patio batean. Herrerako patio txiki horietan eman nituen hamar urte baino gehiago. Bada, ziegara sartu ostean, goiko galerian dagoen El Salvadorreko preso batek aholku juridiko batzuk eskatu dizkit, *euskalduna* nintzelako, *euskal preso politikoa*. Ez dut aspertzeko betarik.

## Apirilak 6

Atzo, iluntzean, ondoko ziegara Jose Mari Noboa, gasteiztarra, ekarri zuten. Murtziako espetxe zaharretik igo dute. Bere aita gaixorik dagoelako Euskal Herrira eramaten dute. Gauean, leihoetatik, apur bat hitz egin genuen. Gaur goizean, autobusean, elkarrekin jarri gaituzte. Hizketaldi luze bat izan dugu. Espetxetako kontuak izan ditugu hizpide. Berak Algecirasen dauden batzuk ezagutzen ditu, eta nik Murtzian dagoen beste bat. Bidaia, neketsua izateaz gain, eramangarria izan da.

Bada, Zueran gaude. Elkarren ondoko ziegetan jarri ordez, gure artean ziega huts bat utzi dute.

Pirinioak ikusten ditut. Gertuen ikusten dena *PrePirinioa* dela aipatu didate. Urrunera, elurtuta, zuri dagoena, Pirinioak. Hogeita bat urte badira azken aldiz ikusi nuenetik. Orduan Iparraldetik Hegoaldera nindoan, nire engaiamendu militantea Euskal Herritik kanpo betetzeko.

Tenperatura preskoak, hotzak, berriro sentitu nahi nituenak. Aldiz, Algeciraseko espetxean gutxitan disfrutatzen dugunak. Gauean hotz egingo du, baina ziega barruan berogailua piztuta dago. Begiak lehortzen ari zaizkit. Begietarako kolirioa eskatu behar izan dut.




Zuera, trantsito modulua, 68. ziegako ate barrualdea

Atean bertan mezu asko idatziak daude. Gehienak gertutik soilik irakurtzen dira. Horietako batzuk hauexe dira:

1. Freedom for the Basque Country.

2. Si no andamos prevenidos los medios de comunicación harán que amemos al opresor y odiemos al oprimido. Malconm X.

3. Lyberté pour le Pays Basque.

4. Muerte a todos los moros.

5. Estado español = cárcel de pueblos.

6. La única lucha que se pierde es aquella que se abandona.

7. Los moros no comen cerdo porque es como si se comieran a su puta madre.

8. No existe Jesús de España
   - Su nombre verdadero es Issa
   - Ha nacido en Oriente Medio, Palestina
   - No habla español, habla arameo, la lengua más antigua del mundo
   - Aprende, burro ignorante.

Badaude beste batzuk, baina aipatu gabe utziko ditut.

## Apirilak 7

Zaballa. "Alava-Araba" espetxean. Iritsi bezain laster zigor bat ipini didate, ziega berean beste preso batekin egoteari uko egin diodalako. Banekien gertatuko zela, aspalditik gure kolektiboaren lagun bat hara eramaten duten bakoitzean, ziegan bikoiztuta egotea agintzen diotelako, eta, horri uko egin ezkero, zigorra jartzen dizute. Bada, niri ere bai. Barne arau bat dela argudiatuta, guri ezartzen digute betebehar hori, legearen aurkakoa bada ere. Lehenengo graduan sailkatuta dagoena, ez bada egoera berezi batean aurkitzen, ezin dute ziegan bikoiztu: ziega beste preso batekin partekatu. Hala ere, gurekin, Zaballan "arau" hori betearazten tematu dira.

Araban dagoen espetxe espainiar honetan hasierako izapide burokratikoak eta elkarrizketak egiten hasi naizenean, kartzela honetara martxoaren 31n iritsi behar nuela aipatu didate. Are gehiago, elkarrizketatu didan hezitzaileak zeukan iritsi berrien zerrendan kartzela honetan egun batzuk neramatzan bezala agertzen nintzela ziurtatu dit. Bada, data horretan Puerto IIIan egun bi trantsiton neramatzan. Beraz, ez dakit zer egin duten edo zer egin nahi zuten.

Euskal Herrira itzuli naiz, ondo sentitzen naiz. Arabara ailegatzean, errepidetik sartzean sentsazio berezi bat nabarituko nuela pentsatzen banuen ere, ez da horrela izan. Bai, ordea, ziegako leihotik ingurukoa begiratu dudanean. Klandestinitatera joan nintzenetik, ia 23 urteren bueltan, etxean aurkitzen naizela konturatu naiz. Nahiz eta espainiar espetxe batean egon. Nahiz eta denbora gutxirako izan. Euskal Herriaz inguraturik nago.

Hamarkada bi baino gehiago igaro ostean, berriro, ETB1 ikus dezaket. Euskaraz emititzen den telebista kate bat! Espetxealdiko lehengo urtetan, gauez, irrati txiki batean -Valdemoron zein Herreran- Euskadi irratiaren frekuentzia harrapatzen saiatzen nintzen. Seinalea interferentzia eta zarata ugarirekin iristen bazen ere, Euskal Herriko leihatilatxo bat baneukan ziegan bertan. Ure horietan, gure herriarekiko lotura sendotzeko, urruntasunean, behar nuen beste tresna bat bihurturik. Orain, ordea, Hala Bedi irratia sintonizatzen saiatuko naiz.

## ETXEAN NAIZ!

Aste bete barru Andaluziarako bidean aurkituko naiz. Eramango naute. Ostera, orain, maite dudan herrian, aberrian nago. Bizitzeko, gozatzeko, disfrutatzeko... nahiz eta espainiar kartzela batean giltzapeturik egon.

## Apirilak 13

Euskal Herrian jarraitzen dut. Ezin dut ziurtatu Algeciraseko espetxera bihar eramango nauten, edo, hemen, egun batzuk gehiago geldituko naizen. Etxean, gurasoekin, herenegun egon nintzen; beraz, edonoiz eraman nintzakete. Dauzkadan lau gauza biltzeko, eta Euskal Herritik kanpora eramango nauen bidaiari ekiteko prest nabil.

Oraingoz ez gaituzte espetxe honetan nahi. Madrilgo gobernuaren apustuak, hain zuzen ere, guztiz kontrakoa izaten jarraitzen du. Gaixo edo hilzorian dagoen familiar bat ikustera (etxean edo ospitalean) ekartzen duten gutarikoa, kartzela honetan aste bat edo bi eman ostean, zegoen espetxera bueltatzeko bidean aurkitzen da. Preso gaixoak hilzorian daudela ziurtatu arte ez badituzte inolaz ere askatu nahi, ezta hurbildu ere, besteok zelan eta zergatik ekarriko gaituzte Euskal Herrian dauden espetxeetara? Gure hurbilketarekin etekin politikoren bat lortuko al lukete? Ez, ezta? Beraz, Algecirasera itzuliko naute; gutxienez, "Araba" espetxean aste bi egon ostean izango da.

## GURASOEKIN EGON NINTZEN!

Zelan deskribatu zer sentitu nuen? Ez dakit, ezin dut. Gurasoak besarkatzea. Etxeko sukaldean egotea, hazi nintzen lekuan. Jaio nintzen etxean. Gurasoekin batera, berriro. Sendiak inguraturik; gurasoak, anai-arrebak, lobak, loben seme-alabak eta koinata bat. Haien aurpegietan poztasuna antzematen. Loben seme-alabak ezagutzeko aukera. Guztiekin berba egin nahian argazkiak egiten zituzten bitartean. Metalezko mahai-tresnekin jaten. Bertatik, giro eder horretatik, irten nahi gabe, etxekoen babesa eta beroa

sentitzen nuelako. Une zoragarri horiek betikotu nahian. Baita ere, kalean zoragarri horiek betikotu nahian. Baita ere, kalean bildutakoen babesa heltzen zitzaidan momentuak.

Kalez jantzitako ertzainak etxe barruan egoteak urduritasun apur bat eragin zuen. Baita tentsio pixka bat.

Alde egin nuenean, etxera nire bila joan zirenean, gurasoek une latz bat pairatu zuten, ertzainek portaera eta jarrera bortitza eta erasokorrak izan zituztelako. Eta, ahaztutako oroimen horiek berriz azaleratu ziren.

Etxetik ateratzean, errepideko espaloian bildutako jendeari oldartzeko prest ertzain uniformedunak ikusi ditut. Euskal preso politikoekiko elkartasun keinu ñimiñoa ixiltzeko prest. Oraindik, arriskutsuak izaten jarraitzen ei dugu.

Etxera joatean, zein espetxerako bidean -bueltan-, telebistaren bidez baino ez nituen eraikuntzak, biribilgunean eta aldaketa urbanistikoak ezagutzen, ikusi izan ditut. Eta ezagutzen en zituen gehiago. Flipatu egin dut. Gorbeia ere ikusi dut, Anbotorekin batera gehien igo dudan mendia. Eta irudi hori nirekin geratuko da, euskal mendiekin amets egiten jarrai dezadan.

## Apirilak 16

Ustekabeak ez badaude, datorren ostegun goizean sendiarekin aurrez aurrekoa egingo dut. Eta, arrastian, Afrika ondora bueltatzeko bidaiarako gauzak prestatzen hasiko naiz. Ez nuke egin nahi izango, baina tira, halaxe da istoriotxo hau, eta prest nabil. Ez da batere erraz izango berriro Euskal Herriari agur esatea.

Joateko balizko eguna hurbiltzen den heinean, urduritasun apur bat gehiago nabaritzen nabil. Hangoa ederki ezagutu arren, buruan, berriz, eskema mentalen aldaketa nabarmena pairatuko dut Botafuegos espetxera iritsi ostean: jendea, espetxeko funtzionamendua, eguraldia, oihuak, usainak, patio edo moduluko giroa, espainiar eta andaluziar telebista kateak eta irratiak... Ostera, horiez gain, berriro urrunkeraren sentsazioa, dispertsioak eragindako komunikatzeko zailtasunak, eta, garrantzizkoa, gurasoak ez ikustea.

Zaintza epaileak, bere ebazpenean, "resulta de justicia que el hijo visite a sus padres", esaten bazidan ere, ez dakit berriro etxera joateko baimena emango didaten. Eta, hala balitz, noiz. Zoritxarrez, horretan ez pentsatzeko ohitu naiz, gurasoekin astero telefonoz berba egitea helbururik nagusiena bihurtu baitzait. Gauza arrunt eta erraz iruditu arren, batzuetan egin ezin bihurtzen zaigun desio eta nahia bilakatzen da. Askotan, dispertsioaren zein aplikatzen diguten komunikazioen kontrolaren ondorio eta eragin zuzena.

Euskal Herritik kanpo hamarkada bi baino gehiago igaro ostean, Zaballako espetxean egonaldi honekin disfrutatzen nabil, aste bi izan arren. Etxean egon eta sentitu naiz. Orain, datorrena datorrela, banoa pozik, lasai eta indartsuagoa eramango nauten txokora. Hau da, usategi erraldoi bihurtu den Algeciraseko "gatazkatien modulura". Beste moduluetan arazo larriak eragiten dituzten presoak gu gauden modulura ekartzen dituzte, eta hauetako batzuek usoei patioko txoko guztietan ogi zatiak botatzen dizkiete. Beraz, usoak ugaritu dira, asko.

## Apirilak 21

Goizean Zaballatik atera naute eta bazkaldu ordurako Burgosko espetxean banengoen. Berriro isolamendu edo zigortuentzako ziega batean, 1. graduan sailkatuta naukatelako. Bakartuta.

Atzo, arrastian, bidaiarako poltsa prestatzen ari nintzela, ziegan bikoiztuta ez egoteagatik ezarritako zigorra ekarri zidaten, zigor proposamena (zigor prozeduraren lehenengo pausua), eta funtzionario baten agindua betetzeari uko egitea leporatzen didate, nahiz eta aginduak 1. graduan gaudenori aplikatzen diguten espetxe-legearen aurka egin.

Bada, Burgosko espetxe zaharra, aldiz, berrituta dagoen ziega batera sartu naute. Mahaia eta aukirik gabe ziega honetako leihoa erraldoia da. Orain arte, egon naizen ziegetan ikusi dudan handiena. Eguzkiaren izpiak eta argitasuna barruraino sartzen dira. Nahiz eta barneko patio batera eman, ikuskizun ederra daukat: bederatzi pinu altu, enbor zuzen eta sendoekin. Haizearen eraginez, haien adar-buruek alde batetik bestera egiten dute dantza, kulunkatuz. Eta, adarretatik, saltoka, mikak eta kurloiak.

## Apirilak 23

Madrid. Valdemoro. Eta, iritsi bezain laster, lehenengo ustekabea pairatu izan dut. Atzo goizean, Burgosen, kondukzioaren autobusera igo aurretik, pikolo batek astelehenean -etzi- Algecirasera doan autobusean sartuko nindutela esan bazidan ere, hon iristean espetxeko funtzionario batek asteazkenera arte Valdemoron geratuko naizela ziurtatu dit. Hau da, egun bi gehiago Madrilen, eta Puerto IIIra doan autobusean -Kordobatik- aterako nautela. Beraz, beste lau egun Puertoko isolamendu moduluan. Bidaian zazpi egun eman ordez, uste nuen bezala, hamaika egingo ditut.

Bidaian darabildan arropa, ia egunero, garbitu behar dut, hartzen duen ke eta tabako usaina kendu ahal izateko. Autobusean erretzea debekatuta egon arren, eta *guardia civil*ek igo aurretik presoi miaketak egiten badizkigute ere, jendeak tabakoa sartzen lortzen du. Eta autobus barruan erretzen da. Benemeritakoek badakite -pertsona guztiek bezala sudurra eta usaimena dauzkatelako-; haien autobuseko ziegetan doanak erretzen duenean, bidaia lasaiago eta arazorik sortu gabe egiten duela dakiten bezala.

Arrastia, patioan, Derion bizi den ginear batekin hitz egiten eman dut. Zaballan ondoko ziegan neukan, eta ez nekien Txorierrin elkarren ondoko herrietan bizi ginenik. Biak txorierritarrak, nahiz eta berak Bilbo nahiago gure bailara txikiaren aldez.

Aldatu ostean, beste sorpresa. Moduluko ordenantza batek (presoa da) biharko kondukzioan sartuko nautela esan dit. Bada, bihar Jaengo espetxeraino eramango naute, eta, etzi, berriro, Granadara. Bertan egun bi egingo ditut. Ostegun eguerdian, al-

daketarik ez badago, Algeciraseko Botafuegos espetxera iritsiko naiz. Hiru egun gehiago eta bidaia honi bukaera emango diot. Orduan, gurasoak ikusteko hurrengo bidaia noiz eskatzen dudan pentsatzen hasiko naiz.

Bada, Valdemoroko egonaldia bukatutzat eman dezaket.



## Apirilak 24

Jaen. Madriletik honaino heltzeko, bost orduko bidaia. Aurreko etaparena baino laburragoa: Valdemoro, Ocaña, Herrera de la Mancha eta Jaen. Herenegun, Burgosetik Madrilera joateko zazpi ordu inguru izan ziren, autobuseko ziega txiki batetik irten gabe. Burgosko espetxetik Dueñasera (Palencia), handik Villanublara (Valladolid), eta, jarraian, Segoviatik Madrilera. Arratsaldeko lauretan iritsi ginen Valdemorora. Gaur, berriz, Jaenen arrastiko hiruretarako baginen.

Ocañatik Herrera de la Manchako espetxeraino doan bidea zeharo aldatuta aurkitu dut. Lehen, ondo ezagutzen nuen bide hori, Valdemorora bidean batzuk egin behar izan nituelako. La Manchako toki ahaztezin horretatik Madrilgo Entzutegi Nazionala eraman ninduten bakoitzean. Aldiz, aldatu ez dena espetxe horretako funtzionarioak dira. Autobuseko leihatilatxotik ikusi nituen batzuk, ni hara eraman nindutenean bertan bazeundenak. Hau da, 21 urte baino gehiago daramatzate espetxe horretan. Ni espetxera sartu berri nintzen; haiek, ordea, Herreran urteak zeramatzaten jada. Eta bertan jarraitzen dute.

Jaenen, egokitu zaidan ziegan -sarrera moduluan- ez dago aulkirik, Granadan eta Burgosen bezalaxe. Espetxe zaharra denez, dutxarik ere ez dago ziega barruan.

Nekatuta xamar nabil, ondo eta luze lo egin gabe bost egun baitaramatzat. Bart, Valdemoron andaluziar batzuk leihoetatik ozenki hizketan ibili ziren. Inork ezer esaten bazien, hauxe zen haien erantzuna: "gaueko hamabiak arte, nahi dudana egin de-

zaket. Gauerdian ixilduko naiz''. Ostera, ez ziren ixildu. Argudio bera, lehenengo aldiz duela zazpi urte entzun nuen, Kordobako espetxean, Herreratik Algecirasera eraman nindutenean. Orduan ere gaueko berbontzi haiek andaluziarrak ziren.



## Apirilak 25

Granada. Gaur eta bihar, Alboloteko espetxean edukiko naute. Isolamendu moduluan. Egun bat baino gehiago igarotzeko denean, 1. graduan izanik, presoa isolamenduko modulura eramaten dutela argudiatu didate. Beste miaketa *integral* bat. Biluzarazi didate modulura sartzean. Ziegako leihotik, aurreko murrua eta ortzia baino ez dakuskit.

Modulu honetan, zerbaitek arreta deitu badit, zera izan da: atera nauten patioetan komunik ez dagoela, baina, aldiz, pareta baten, kanila bat dagoela.

Beno, bidaia honen bilana egin beharko banu, baikorra eta hunkigarria izan dela aipatuko nuke. Etxean gurasoekin egotea, haien aurpegietan antzematen nuen poztasuna, etxean nintzela sentitzea, Zaballako espetxean aurrez aurreko bat eta bisita bi egitea, adiskide eta lagunak etxe aurrean ikustea eta entzutea, Txorierriko zati bat berriro ikusi ahal izatea, bertako telebista eta irratiak ikusi eta entzutea... Euskal Herrian izan naizen aste bi hauek denbora laburra izan da, bai, baina ondo aprobetxaturik.

Bidaia fisikoa, aldiz, luze eta neketsua. Oraindik azken zatia falta da: Algeciraseraino errepidea, hara iristea eta ea berdin jarraitzen duen begiratzen.

## Botafuegosen, 2017ko apirilaren 28a

Bidaia bukatu da. Atzo iritsi nintzen. Ziega garbitu eta atondu ostean, arropa garbitu eta dutxara joan nintzen. Ziega barruan, oraintxe, leku guztietatik arropa zintzilikatuta daukat, leihoan eta patioan ezin baitut ipini euria ari delako. Neurekin batera ekarri dut euria. Jaenen trumoiak entzun nituen, eta ortzia lainoturik zebilen. Granada, euri apur bat bota zuen. Eta hemen, atzo goizean heldu banintzen, iluntzean euri zaparrada botatzen hasi zen. Gau osoa euripean eman dugu, eta horrela jarraitzen dugu.

Bada, nire bizimodua berriro hemengo egunerokotasunari lotu beharko diot: patioko ordutegia, kirola, tailerra, kiroldegira irtenaldiak, preso sozialekiko harremana gaurkotzea (kideekin atzo egin nuen), bisitak, telefono deiak, aurrez aurrekoak... Lehen neraman bizimoduari berriro ekitea, horrek daukan murrizpen eta zailtasun guztiekin.

Egun hauetan ere, *Ingresos* moduluan utzi behar izan nituen nire gauza gehienak berreskuratu beharko ditut: arropa, liburuak, telebista... Bitartean, ziegan, bideari ekarri nuenarekin -gehi utzi didatenarekin- egunerokoa  egin beharko dut.

Bada, hurrengora arte.



**Aletxu Zobaran Arrieta**
1981
Gorliz

Atxilotze data: 2011ko martxoaren 10a.

Maison Centrale
La Caserne de Thoiras, E 2
17410 Saint Martin de Re
Frantzia

## Ni, zu ta bera: gu

Burua erabiltzea ez da sinple.
Agian ez dakigu ere zer den hori.

Alde batetik lagundu nahi dut maite dudana,
bestetik ezin dut harekin elkarrekin egon,
eta alde egin behar dut,
maite dudana ez dudalako jasaten.

Zergatik?
Nire burua ere ez dut jasaten.
Ez dakit hura erabiltzen.
Pentsatu dezaket erabiltzen dudala baina
berak ni erabiltzen nau,
bere panpina izango banintz bezala.
Menderatzen baduzu nire burua
ondoren ni nauzu aurrean,
eta ni menderatzen banauzu
hura izango duzu zelatan.
Eta nire ispilua zara.
Ezagutzen nauzula uste duzu,
nik ere pentsatzen dut ezagutzen dudala
baina ni ez den hori ez dugu ezagutzen,
nire azalaren barruan dagoen arren.
Bere begirada nirearen atzean izkutatzen da.
Bere begirada zurean isladatua ikusten dudanean
beldurra sentitzen dut, ez zugandik,
zugan islatutako nire barreneko beste horrengandik.

Zein edo nor da mamu beldurgarri hori?
Ilun, Etsai, Amorru, Aker, Makiabelo...
Gaiztoa eta zitala, eta nire baitan dago.
Babestu gaitu ere,
baina ez du nahi gupidarik, ezta maitasunik ere.
Beharbada galdu du gizatasuna
eta animali besterik ez da.
Animali, pizti, tximino... Auskalo.
Ihes egiten badiogu
gure atzetik jarraika, eraso egiten digu
edo ihes egiten begiratzen gaitu,
mesprezu ezin handiagoarekin.
Agian ikusten gaituelako,
bere askatasuna mozten
gure txikitasunarekin.
Hurbiltzen gatzaionean hozka egiten du.
Begiratzen du, hurbiltzen uzten du, dantzan, baina
dantzan bertan erasotzen du,
eta momentuan hiltzera jotzen du,
zu akatuz ni akatuz ere.

Kontrola dezaket, baina nekagarria da ume hau.
Ez da besterik, ume gaiztoa baino,
negar egiten lortzen ez duena.
Baina ni ez naiz umea, eta umea nire parte da,
nire kontrola euki nahi du, eta hor
barne talka itzela da.
Sormena, indarra, grina... dena zurgatzen dit,
baina berak ere ematen dit.
Bera da nire indarra,
berak mantentzen nau bizirik.
Berdin dio denak, dena txikitu nahi du.
Dena ala ezer ez du lelo.

Eta ez du arrazoien aurrean erantzuten.
Orekak bilatu eta mantendu ditzakegu,
baina kamikaze bezala,
edo koldarra bezala jokatzera
behartzen nau.

Ni baino askoz ere indartsuago da. Izan ere,
ez dut indarrik ez kemenik berataz aparte.
Bera da nire indarra, agian ni bera
besterik ez naiz.
Gu gara.

Ikasi dezaket burua erabiltzen,
diziplina bat mantendu,
baina gainditzen nauenean
edozer gerta daiteke,
eta sentimenduen arabera
besterik ez da mugitzen.
Egin egiten du, eta
atrapatua nauka.
Nire argia eta iluna da,
bera baita egiten duena,
ni ez naiz ezer.
Ikusle hutsa besterik ez naiz.
Eta lotsa ematen dit,
nire nortasuna
berak eraikitzen duelako ekinez,
eta gure artean borrokan,
nik bera moztu besterik ez.

Zu maite bazaitu ere
zu menderatu nahiko zaitu
umea besterik ez baita,
ume galdua agian, beldurrak jota.
Bestela etsai bilakatuko zaitu,
eta nik orekak bilatu, aurkitu eta ekinez,
indarrak gastatzen ditut
gure barne kontraesanetan atrapatua,
helduaren jakintsu
estoikoaren paperean.

Ezin zaitu nahi bezala maitatu,
kontrolatzen dudalako.
Oreka dinamikoa aurkitzen dugun arte.
Burua eta bihotzaren artean.
Burua eta burutxoaren artean.
Bihotza eta tripen artean.
Eskuen eta bihotzaren artean.
Hankak eta buruaren artean

...

Dena zurgatzen dit,
eta dena ematen dit.
Hau bai da atrapatua egotea
lore baten isladan.
Borroka, ederra, ez dela, esaten didanari
zaplasteko, ederra ere, emango nioke, ere.
Baina egia da, oreka ikusi ahal dela,
ikasi ahal dela oreka hori mendean hartzen,
osatzen dugun gu
batera aritzen hasteko, etorkizuna eraikitzen.

- Yo no conozco esa zona.

- Evidentemente, la parte bunkerizada de los bajos no está para recorridos lúdicos, está para lo que está -precisó el secretario.
- Entonces, ¿a qué bajan ellos allá?

- Ya te lo han dicho, a fumar.

- Si se esconden ahí a fumar es que con el cigarrito va algún placer particular añadido.

- Mesedez, Pako. Kanpaia jotzera?

- Que no, ¿en qué estás pensando? Me refiero a que igual bajan hasta allá a fumar precisamente porque les hace sentir particularmente bien hacerlo ahí.

- Claro, las esporas de los hongos... el humo del tabaco...

- No me jodáis que toda esta crisis puede estar provocada por unos hongos que encienden en el personal el espíritu independentista.

- Les pasaba a los indios americanos.

- Ai ene, la venganza de Sabio Arana por ser unos malinches.

- ¿Qué pasa; aquí todos os metéis algo?

- Aizu, sin faltar al respeto.

- No es por faltarle a nadie, Miren Sorkunde; pero a veces parece que se nos está yendo la olla.

- Egia esan, de todo lo que hasta ahora se ha puesto sobre la mesa, esto de las setas alucinógenas es lo que me parece más plausible.

- De momento, sea ése o no el origen del problema hay que tomar medidas en relación a las plantas bunkerizadas de acceso restringido. Y es que no entiendo cómo siendo de acceso restringido el personal puede bajar hasta allá a echarse un cigarrito. Es inconcebible. Si eso ocurre y nadie sabíamos nada, cualquiera sabe qué otras cosas pueden estar sucediendo en el subsuelo de esta casa sin que nos estemos enterando.

- Ya sabemos cómo es esto, Joseba; estamos en nuestra casa, somos una familia...

- Sí, pero habrá que cumplir las reglas, no sea que acabemos como la familia Iscariote -cortó el secretario. En cuanto concluyaos la reunión voy a hacer una circular interna para que esa parte del edificio sea de acceso totalmente prohibido sin una debida autorización firmada por mí. Ya estableceremos las medidas para el personal técnico.

- Pero, si hay hongos, habrá que encontrarlos y acabar con el cultivo.

- Claro, si no, quién sabe. Igual esos hongos se van haciendo gigantes, sus esporas comienzan a expandirse por todo el edificio y acabamos convirtiéndonos en un partido independentista, como los catalanes.

- ¿Aquello habrá sido también por setas?

- Jainkoak jagon gaitzala! -exclamó sonoramente Itxaso. ¡Las setas del apocalipsis jeltzale!

- No asustéis, hostias.

- Mesedez, blasfemiarik ez!

- Uno de mi cuadrilla, muy del Partido, está en la Sociedad Micológica. Es de total confianza. Sin necesidad de explicarle cuál es la realidad del problema, puedo hablar con él para que venga y vea el lugar. Es una eminencia en setas. Estoy seguro que nos arreglará el tema.

- Pues bueno -concluyó el secretario-, parece que ya tenemos enfocada la crisis hacia la resolución.

- Ya podemos respirar tranquilos.

- Ederto, bada.

- Esto patxaranes merece.

- Habrá que organizar un afari en el txoko para celebrarlo.

- Goazen a la Basílica con unas flores, Miren Sorkunde.

- Dudo mucho que Josu Jon hubiera resuelto esta crisis con semejante diligencia.

- Vaya ejemplos que pones, Joseba. A ése hubo que mandarle a que le dieran por el pozo de petróleo, pero por todo lo contario que a Andoni.

- Es que ni una cosa ni la otra, joder.

- Somos el centro virtuoso de la balanza. Si seguimos así, duraremos más que la propia Iglesia de Roma.

- ¡Por la buena marcha del negocio!

- Hala bedi!

Una voz se escuchó entonces por encima del creciente júbilo. "No quiero ser el aguafiestas y estropearos esta alegre biribilketa, pero... hemos estado buscando el origen del problema y formas para atajarlo y salir de la crisis. Vale. Correcto. Pero igual no hemos analizado debidamente los síntomas para llegar al diagnóstico correcto. Quiero decir, s por encima de las anécdotas sobre los pintorescos comportamientos de Andoni y los otros a nadie se le ha ocurrido plantearse que pudiera ser que lo que Euskal Herria está reclamando de forma mayoritaria sea disponer libremente de su futuro, que lo que reclaman es la independencia".

- ¿Qué pasa, Aritz. Tú también le das a las setas?

- Ai ene! Goazen, Miren Sorkunde, vamos a ponerle unas flores a la Amatxu de Begoña que esto me está poniendo oso urduri.

- Habrá que prohibir las tortillas de hongos en la cafetería.

- Yo os espero abajo y voy pidiendo el txakolin.

Todos fueron abandonando la sala de reuniones en un murmullo que cada vez llegaba de más lejos. Aritz se ponía la chaqueta

mientras observaba a través de la cristalera el cielo encapotado sobre Bilbo. El secretario se quedó recogiendo sus papeles. Levantó la vista y le dijo:

“Ay, Aritz, tienes cada ocurrencia. En vez de entretenerte con esas tonterías de la independencia piensa en las cosas que verdaderamente interesan a la gente, y en qué podemos hacer con Andoni cuando regrese de Australia. No sé, colócalo en algo del Partido. En una empresa pública no, porque la tendríamos liada con lo de las puertas giratorias y ya tenemos bastantes problemas internos con las algaradas independentistas en los batzokis”.

*A Lamako gartzelan, 2017ko apirila*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958
Eibar

Atxilotze data: 2000ko urriaren 17a.

Lau liburu argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (Ataramiñe, 2011);
*Ainarak herrira itzuliko dira* (Ataramiñe, 2014);
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (Ataramiñe, 2016).
*Udaberrian biziko gara (Ataramiñe, 2017).*

Centro Penitenciario Córdoba
14014 Córdoba

## Iragana, espetxea eta geroa

1
Lurrak biraka darrai ortzian
espetxean zaudenean,
kideak esan zidan umorez
etxartean geundenean,
iruzkinari erantzun nion
trostan ari nintzenean,
"ez da erraza konturatzea
murrutzar hauen barnean,
zu zarenean egon etzanda
urtetan oroimenean,
bihar maiteaz orduko xarma
piztea nahi duzunean".

2
Laztanak ziren garai jorian
eta gogoan geratu,
ezereztu ez den gatazkak dit
harremana besteratu,
nahiz ziegatik ohi dudan eran naiz
zeure txokorantz airatu,
sentimendua ezin dut orain
lehen lez azaleratu,
lore berriak beharko ditut
zeure zelaian paratu,
espetxetik at oro dakidan
bizipoza oneratu.

3
Iragana ez dut ahaztuko
nire bizitza delako,
akordatzeak on egiten dit
zurekin nagoelako,
ezin naiz bertan bizi ordea
izan ohi da kalterako,
alai zein triste aurrera beti
egin behar dugulako,
ez ditut gaurko kezkak lagako
konpontzeke gerorako,
maitasunaren kontuak berben
bidez ontzen direlako.

4
Gauak biluzik pasatzen ditut
desiren hariztian,
askatasuna zeure printzekin
jantz dadila goiztirian,
horretarako bihotza jarri
behar dut gozo abian,
goizean oroit naiz maitemindu
ginela udaberrian,
osteratxoak genegitzala
maite dugun izadian,
ederki gara biziko arrats
oskorrien loraldian.

## Maite dudan kide bati

1
Auzitegi Nazionalean biluzik
etsaikeriaren menpe daukate,
erabakia bidegabe hartuta
espe ohia berriz itxiko dute,
belasko ilunei herra darie
sua urtetan hauspotzen dabiltza.
Zuzentzari iruzur egin diote
mendekua lege bilakatuta,
xedea deserrian hil dadila da
sufrimenduak luze iraun dezan.

2
Bihotza askatasunari bezala
herriari eskaini ziolako,
kideari osasuna opa diot
Euskal Herrira mardul itzul dadin,
merezi duelako oro zoria
etxaldean zain duen maitasuna.
Zelaia prestatzen jarraituko dugu
elkartasuna oparo zabaltzen,
udaberrian loreak sor daitezen
goiztiriak lokabe ikus ditzan.

## Kartzela eta denbora

I

Kartzelan denbora erruz dugunez
ederki baliatzen dugu,
kontua orduak eratzea da
pena ekinez leuntzeko,
zer egin hausnartzen aritzen gara
denetik zerbait egiteko,
behin gaitezkeenez bakarrik bizi
aukera zukutzen baitugu.
Egunak gogotsu darabiltzagu
atsegina txit sentitzeko,
baina ez ditugu nahi xahutzerik
gogoan herra sustrai dadin,
gatazka sutzen dabiltzanak antzo
bengantza egikaritzeko,
geure helburua amnistia da,
askatasunaren zirria.

2
Tarte bat erabili ikasteko,
gorputza kirolaz zailtzeko,
bihoztunen gutunak miresteko,
ametsak xarmaz islatzeko,
kafea kideekin edateko,
soak hitzekin alaitzeko,
Eskulanak josi zein marrazteko,
aberriari kantatzeko…
Hemen denbora dugu oldozteko,
sentiera oneratzeko,
irudimena ziegetan pizteko,
ilusioak mamitzeko,
maiteari desirak esateko,
ostadarra erakartzeko,
biharko goizak aurreikusteko,
zuen babesa eskertzeko.

## Kartzela eta maitasuna

1
Ziegan bizigura zait
neguan eskasten,
uste ustelak dizkit
irriak ebasten,
pentsamenduan dira
asmoak lardasten,
udaberrian aldiz
ideiak arazten,
sentiera hasten da
orduan arnasten.

2
Ilusio faltsuaz
sasoia dut galtzen,
urruntasunak dizkit
taupadak makaltzen,
zeure irudi mina
ari zait estaltzen,
gogoan ezinbestez
desira itzaltzen,
zentzuak has ditzala
zalantzak apaltzen.

3
Harremana dirudi
doala behera,
luizia heldu da
zirraren bidera,
sorgin haizea etor
dadila ostera,
geure bihotz agorrak
naro ereitera,
hildu diren txingarrak
fite berpiztera.

4
Geroak du geurea
garbi argituko,
zuzenki zer izango
garen marraztuko,
izan ginena ez dut
sorgor ahaztuko,
adiskidantza nahita
zakar zatituko,
samurtasuna dizut
leun hauspotuko.

5
“Bizitzak ezusteak
dizkigu ematen”,
etxartean hori dut
sarritan esaten,
neure nahia da “segi
dezagun izaten”,
nik zu gabe nekez dut
zigorra jasaten,
hasiko naiz lehen lez
xarmatik edaten.

6
Has daitezela geure
zauriak osatzen,
etsipenak hitzekin
poza bilakatzen,
egoera makurra
gaude oneratzen,
enarak ari dira
goia ferekatzen,
liliak lehen antzo
zelaiak brodatzen.

## Roberto, Xabiertxo, Espe, Jokin, Felix, Sua, Josu, Azkoitti, Mikel… eta gainerakoei

I

Kardantxiloak udaberria lez
askatasuna gura zenuten,
ihintzak eguzki-lorea beste
herri zaharra zipriztintzea,
nahiz bakarrik behin bizi gaitezkeen
borrokan zentzuz hasi zineten,
patxada urrituko zitzaizuen
xedea ez zen nolanahikoa.
Lehia injustiziaren kontra zen
eskubideak ziren helmuga,
sastrakak nonahi egon zitezkeen
urratsak minki ezerezteko,
era askotako gertakizunek
bihotzak hautsi zizkizueten,
zuen taupadak baitan dantzuzkigu
sentimenduak bizitzen ditu.

2

Eibarren ez zarete ilunduko
oroimenean dir-dir zaudete,
atsegina sakon sentitzen dugu
zuen irria gu garelako,
herrian, kartzelan, zein erbestean
zinez zarete geure arnasa,
lurraldea maite zenutelako
itxaropenak kulunkan dirau.
Arraten pagoak mardulik daude
loria gertu sumatzen dute,
iretargia keinuka hasten da
zelaian batzen zaretenean,
kateak moztea nahi zenituzten
hesirik gabe bizi gintezen,
izpiak zuentzat izango dira
bake duinaren argisentian.

## Ziega hotzean Olentzerorekin amesten

I

Berogailua denez matxuratu
mantekin dut soina tapatu,
hotz dagi ziega madarikatuan
herraren isolamenduan.
Hotzituta gaude Gabon gauean
irrintziak ziplo airean,
ohean hasiko gara abesten
Olentzerorekin amesten.
Desirak ari da garraiatzen
esperantzak non-nahi banatzen,
Kantauriko uraz gaitu lurrindu
naturaren xarmaz sorgindu.
Sentiera nahi digu sustatzea
izartegia opatzea,
euskal herrira eramango gaitu
bihotza dakigun bizitu.

2
Bilbon elkartuko gara elaiak
preso eta iheslariak,
elkartasuna dugu gozatuko
atsegina txit sentituko.
Olentzero dugu txeraz ukitu
eskerrak emanez gorritu,
saiatzen delako xextra konpontzen
bizitza lurraldean ontzen.
Maitez dugunez erein luberria
gertu dago udaberria,
geurea delako gutarren nahia
loratuko baita zelaia.
Milaka manifestari gurekin
Sare eta Etxeratekin,
prest zaudetenez eusteko goiari
eutsiko diogu hotzari.

## Maitasuna zigorrean ospelen garaian

I

Berogailua ez dabil ziega lardatsean
gatibua mantapean dago arratsean,
Siberia dirudien zoko laiotzean
hotzikara nabaritzen zaio kokotsean.
Atzamarrak dauzka ospelekin gaizkituta
desirak hotzaren eraginez murriztuta,
osasunarekin dago arras kezkatuta
sentitzen duelako bihotza izoztuta.
Negu gorria, gordina ohi da zigorrean
zerbait leuntzen zaizu ametsen alorrean,
sartzen zaituztenean ezleku iharrean
egoten zara maitasunaren beharrean.

2
Maitea gogoan, idazten dabil gutuna
hotza dela medio letra ez da txukuna,
orrian islatzen dihardu samurtasuna
jardunak ontzen dio egoera iluna.
Hamaika bizipen eder zuten partekatu
atsegina hitz magikoekin harilkatu,
maitasuna kartzelan hola du elikatu
horri esker haria ez da inoiz puskatu.
Ospelak lerroen artean ahaztu ditu
sentimena zaiolako poliki bizitu,
"maite zaitut" esanez sorkuntza du finitu
xuxurlatuz, bihotza ziplo zaio goritu.

## Ataramiñeri esker onez

1
Ataramiñen daukate
baratzea loretan,
uzta bilketa dagite
aldiro kartzeletan,
distira nabaritzen da
presoen ninietan,
obrak dakuskitenean
dotore kaieretan.

2
Ataramiñeko sortan
desiren oihartzuna,
plazetara iristen da
sormenaren lurruna,
Euskal Herria izango
denez askatasuna,
preso sentimentalak du
biribiltzen jarduna.

3
Ataramiñe ari da
kultura gerizatzen,
azpiratuen aleak
musu-truk inprimatzen,
bihoztunak hasten dira
gauerdian hegatzen,
ezlekutik lurraldera
ametsak garraiatzen.

4
"Sorkuntzaren magia da
sorgintzen gaituena!",
Ataramiñen diote
gozatuz sentimena,
akuilatzen dutelako
preso daudenen sena,
kartzelan non-nahi dabiltza
lantzen irudimena.

5
Ataramiñek bikain du
bere nahia zeratzen,
literatura txokoan
ederkiro sustatzen,
eskulanetaz da ere
egoki arduratzen,
kaierak urtero ditu
jator argitaratzen.

6
Artistak ez diren arren
maite dute artea
laket zaie idaztea,
pintatzea, jostea…
Ataramiñen zabalik
dago beti atea,
osatzeko barrenean
lokabeen ostea.

7
Ataramiñen presoak
daude kilikatuta,
halaber, musen zoruan
erabat askatuta,
Durangon egoten dira
azokan kokatuta,
mortuko bitxiak egon
daitezen islatuta.

8
Ataramiñeri esker
pozarren bizi gara,
printzak arimatik dira
irteten argitara,
herriak ahaz ez dezan
lan jasoen zirrara,
egon daitezela bihar
edonoren bistara.

## Amnistiaz

1
Amnistia ez da espetxetik
presoak ateratzea,
baizik gatazka eragin duen
minbizia osatzea,
botika baita demokrazia
zemai barik bilbatzea,
halaber, giza eskubideez
jendartea tratatzea.

2
Nahiz Madril eta Paris dabiltzan
lehertzen nahita zubiak,
atxikimendu dezente dauzka
lurraldean amnistiak,
plazak hartuta erakutsiko
dizkiegu gure nahiak,
herrak ezingo ditu ekidin
eguzkiaren izpiak.

3
Franco hil eta gero tematu
ginen amnistiarekin,
uste genuen genezake(e)la
errazki lor elkarrekin,
berrogei urte igaro dira
darraigu asmoarekin,
xede xaloa bidean zaigu
umotuko urratsekin.

4
"Amnistiarik gabe" ozenki
"bakerik ez!!" genioen,
garai haietan gure oihuak
behin eta berriz zioen,
nik neure baitan "demokrazia
amnistia da" nioen,
sentimenduak atzo lez orain
ondo dakit zer dioen.

5
Amnistiaren norabidean
libre itzuliko gara,
presoak eta iheslariak
goza dezagun algara,
apirilaren hamazazpian
hegan goaz "Casilla"-ra,
hamabietan Bilbon zertuko
dugu desiren ilara.

6
Zer eskatu du Bilbon jendeak?
oinez mugak urratzea,
horretarako behar den beste
denbora borrokatzea,
ezlekuetan ebatzi dugu
aholkua obratzea,
zuen taupadak eta gureak
zintzotasunez batzea.

7
Nahiz esperantzak bihozgabeek
dituzten boikoteatzen,
kideak noizbait hasiko gara
Euskal Herrira bueltatzen,
amnistia joan dadin sustraitzen
udaberrian loratzen,
zelai agorrak lubaki barik
ikus ditzagun berdatzen.

8
Irribarretsu irits gaitezen
zuekin atseginera,
enarak ziegan zinez gabiltza
apailatzen itzulera,
hola herrian ariko gara
norabidean batera,
kemenak zuzen eraman gaitzan
amnistiaren etxera.

## Txirtxilaren kantua kartzelan

1
Kartzelan ez dut maite
txirtxilen kalaka,
mozten digutelako
loa sastaka,
ziegetan direnean
sartzen algaraka,
ametsak ziplo dira
bihurtzen karraka,
gertu taka-taka
dantzuzkit biraka,
hedatzen matraka
hegoak zartaka,
bihotza eroki zait
hasten punpaka.

2
Txirtxilak uxatzen dit
ziegan atsegina,
hegoekin delako
nekaezina,
nahiz hotsak dirudien
egunaz arina,
bizkor eragiten du
ohean samina,
intsektu erkina
zara kaskarina,
gaueko txirrina
arras erretxina,
kartzelan nor ordaintzen
dizu ekina?

3

Kartzela jaso zuten
txirtxilen zelaian,
bakea bukatu zen
euren ludian,
nahiz gu lez bizi diren
murruen azpian,
uste dute daudela
libre izadian,
bero udaldian
baitaude lorian,
isil eguerdian
kri-kri gauerdian,
Castrok (*) jasan ditzala
epaitegian.

4

Instintuan ei dago
txirtxilaren sena,
horrek naro eskaintzen
dio kemena,
gaupasak egiteko
ohi du ahalmena,
hegoak igurzten da
zinez hoberena,
koko alaena,
geure pairamena,
dirudi txerrena
urdinen eztena,
Rajoyri diezaiola
ken atsedena.

*(*) "Geure" espetxeetarako zaintza epailea*

## Leonard Peltierri

1
Nork dauka preso berrogei urte
Leonard Peltier zaharra?
Zergatik ez du Obamak utzi
kate barik indiarra?
Zein da bengantza behin eta berriz
eskatzen duen txatxarra?
Galdera hauek dagitzat eten
dezaten zigor lakarra,
han eta hemen erauz dezagun
gorrotoaren zuztarra.

2
Hirurogeita hamabi urte
eta gaixorik zokoan,
sei presidentek ez dute laga
barrutik kanpo behingoan,
zuzentza hola lurpean dago
demokrazia sotoan,
Peltierren giza eskubideak
daude estolden hondoan,
elkartasunak ferekatzen du
gutun ederren soroan.

3
Bisontearen kulturan amets
dagi ilargi betean,
sentimenduak izkiriatzen
diharduen bitartean,
bere desira bizitzea da
arbasoen lur maitean,
euskal presook hori diogu
gaudenean etxartean,
Peltierri maitez opa diogu
zoria hormen ostean.

4
Zaldi Erok net kalitu zuen
Custer jeneral zuria,
bere xedea laguntzea zen
siux nazio eria,
eskura zezan jende salbaiek
kendu zieten loria,
Peltierrek sakon dazagu leinu
jatorraren historia,
oro sentitzen du ehiztarien
arima ibiltaria.

5
Gizaldi batzuk joan dira ostu
zietenetik zorua,
indiarrentzat galera hura
gaur lez izan zen dolua,
erreserbetan maiz jasan dute
Kolonoean erdeinua,
Peltierrek izan zuen gazterik
txartuta bizimodua,
kinka larrian soilik zentzuen
Rangers harroen ulua.

6
Angela Davis leialak dio
"utikan espetxeari",
Peltierrek hori bera diousku
beha ziega goibelari,
biek pilpiraz eta kemenez
dautsote utopiari,
Etxe Zuriak itzul diezaion
ongizatea beltzari,
bere larredi zoragarria
lurra den indioari.

## Hamazazpigarren urtean sentimenduz blai

1
Hamazazpigarren, urtean sartu naiz,
ziegan preso nago, sentimenduz blai,
jendartea ei da, erabat aldatu,
bizitza irauli, du internetek,
zoritxarrez gerrak, ez dira isildu,
bideetan daude, iheslariak.
Arren, has gaitezen, burua zentzatzen,
kemenez hedatzen, elkartasuna,
bankuak ez dezan, produzi pobrerik,
aberatsa muga, barik aberats,
ingurugiroa, onera dezagun,
tinko baztertuta, kontsumismoa.

2
Ia hamazazpi, urte deserrian,
dispertsioaren, zoru sikuan,
eta hemen ez da, ezertxo aldatu,
mendeku zaleen, menpe darraigu,
zorionez ez dut, galdu esperantza,
gure helburuak, mardulik dirau.
Lehen genioen, eutsi garaitzeko,
konbentzi dezagun, diogu orain,
herkide xaloak, enparantzetara,
arrats oskorrian, helduko gara,
askatasuna nahi, dugu konpartitu,
zuekin josteko, herri askea.



**Aitzol Iriondo Yarza**
1977
Lasarte-Oria

Atxilotze data: 2008ko abenduaren 8a.

MOULINS-YZEURE
Centre Pénitentiaire (condenados)
Les Godets
B.P. 24
03 401 Yzeure Cédex
Frantzia

## Zentroa eta periferia

– Gaia: Zentroa eta Periferia. Edo Zentroak eta Periferiak. Asko eta desberdinak baitira. Nondik heldu gaiari? Ba bertsolaritzan jarri ohi diren bezala hau ere gai zabala. Bakoitzak uler dezake nahi duen modura eta hala idatzi. Nik aipatu nahi nituzke zenbait puntu ideia batzuk ematearren:

– Periferiak izan daitezke geografikoa, norbere aberritik bortxaz deserriratuak izan garenok osatzen duguna adibidez. Edo deserriratu gabe, mendebala den zentroaren periferian mugitzen diren herrialde ustiatu eta espoliatu oro. Gurera etorriak bezala, guretik bidaliak. Txarrantxa-hesitik *bestaldera daudenak, eta txarrantxa-hesi artean gauzkatenak*.

– Periferian izan litezke Euskal Herrian bertan botere gunetatik at dabilen oro. Baita foku hegemonikotatik at dabilen oro ere. Herritik sortutako edozein proiektu, mugimendu eta ideia...

– Periferian dabil arauetatik at dabilen oro. Heteroarauetatik at, arau kapitalistetatik, at, espainiar-frantsesen arauetatik at...

Periferian dabil puta, transgenero/transexuala, zaintza bizitzaren ardatz duena, migratzailea, euskalduna, etxegabetua, Lurra bera.

– Periferia horrek hartu lezake plaza eta herriko plaza bihur lezake zentro, erabaki gune, hots, botere gune. Tahir plazak, Taksim eta Gezi, Plaza del Sol M15 batean, Place de la République -Nuit Debout-, Occupy Wall Street, Gipuzkoa Zutik, Notre Dame des Landes, Gsteiz aurtengo apirilaren 9an (mugimendu feministaren manifestazio indartsuan), Kurdinstango Rojava...

– Periferiak izan litezke burujabetza ukatua duten nazio, herri edota komunitateak; eta erdigunea, estatu-nazioak.

– Agenda politikoaren periferian egon gaitezke errepresaliatuok Euskal Herrian gaur egun. Baina pertsona askoren zentroan ere bagaude. Uneka bihurtu izan garen bezala, bihur gaitezke konpondu beharreko erdigune bat.

– Lasarten adibidez, balizko prozesu independentista baten erdigunea izan liteke Okendo plaza (irudi bat egitearren) eta periferia izan litezke Zumaburu, Sasoeta, Oztaran, Oria... Edo agian, burujabetza prozesu batean erdigune multipleak lortuta, periferia horiek ere bihur litezke zentro.

– Zentroa bizitza errausten duen hori izan liteke, eta periferia, hondakinetatik materiala (berzitklatuz9 eta bizitza (konpost bidez) eraberritzen duen hori.

Horiek dira argazki batzuk, nolabait esatearren. Egoerak. Gero daude egoera horien aurrean egiten dena. Eta hor:

– Periferiak izan litezke zentripetuak. Alegia, beti zentrora begira bizi direnak, aldarrika, protestaka, eskaeraka, hura desio nahian. Edo/eta izan litezke amaraunaren modukoak, elkar ezagutuz, elkar harremanduz, elkar zainduz, elkarlanean, pixkana boteretzen doazen periferiak, ahots anitz horiek galdu gabe ahots berri bateratu bat ere sortzen asmatzen dutenak. Eta hala zentro berriak sortzen asmatzen dutenak, ahalmendu eta botere gune propioak sortzen dituztenak.

## Testu proposamena

*Ahotsa, inorena dela, norabide anitzetan ihes eta gainezka egiten duela. Ahotik atera eta norbaiten belarrira. Ahotsa erlazionala da. Bestearengana doa, beti. Nire ahotik aterata ere, bestearengana. Ni-aren ahots anitzak. Ni-aren ahots anitzek ez dute ahotsa gorputz zurrun eta itxi batean kaiolatzen. Identitate jakin baten rolean. Ni-aren ahots anitzak eza du ziurtasunik eskaintzen. Ez da erosoa...*
(*Beltzuria*. Ixiar Rozas)

Zuria da erdian, hila
Koloreak periferian, heri
topo egin, ezagutu, elkartu, batu dira
eta bere baitan ostadarra daraman Beltza
sortu dute.

Euskalduna munduan

Euskaldunarentzat espaloiak estuegi dira eta zebra pasoak dekorazio kuriosoak.
Euskalduna izaki arraro bat da
Munduan alderrai dabilena
INORK ulertzen duena
Batez ere, munduko euskalduna, ez da inorena
Orobat, inor ez diren guztiena da munduko euskalduna

Jantzi ditu bitxiak eta arropa garestiak
Espaloian ibilarazi dute
Zebra pasoaren marrak zeharkatzen irakatsi diote
Mututzen, gortzen, itsutzen, azalgabetzen, geratzen joan da euskalduna
inerme(1) samar bihurtu arte

Euskalduna munduan oihuka dabil, alabaina
Garrasi ixilen sinfonian
adarkatze bonben zarata artean
euskalduna Kandileko mendietan dabilena
Bronxeko beltzen artean
Parisko banlieuzardaren larruan

Euskalduna erail zuten martxoaren 5ean Hondurasen tirokatuta
Berta zuen izena
Euskalduna birikak sulfuroz pozoituak dituela hil da Kongoko minetan
Edo amiantoagatik Hernanin

Euskaldunak larru beltza du, marroia, gorria
Euskaldunak alua du
Euskaldunak eskuak ditu lurrez beteak
Euskalduna euskaraz mintzo zaio munduari
(tamazighteraz mintzo zaion ber gisaz)

Bedebietan kristalak apurtuta dituen portaletik atera da euskalduna
belaunetarainoko bota merkeak jantzita
Rimmela betileetan eta ezpainak
hipermegagorriz pintatuta
mobilari begira

Euskalduna puta bat da
Eta puta bezala bizi da
Espaloia estu zaiola
zebrari paso egiten
enpresaburua larruz jotzen
gotzainaren zakila larrutzen

Euskaldunak momentua bizi du
INORen herriak biziarazteko borroka iraunkorrean
Euskalduna dantzan dabilena erdiko atzamarra zutik duela
kartzela desegiten

Euskalduna ez da bi generotan kabitzen
eta nahiago ditu bost edo hamaika
ez du kolore bakarreko larrua
ez da ez zuri ez beltz
eta bada zuri eta beltz ere

Euskalduna alderrai dabilela dirudi
Jaun  Goiko madarikatu baten hierarkipean umiliatua
Zarata eta pantaila gehiegiren artean INOR
Jauregi hipotekatuetan preso
Begi ninietan txarrantxen irudiak islatuta

Puta beltz euskalduna, baina,
Kalashnikova bizkarrean dabil Dyarbakirren
Suzia hartuta Gudarien enparantzan
bizitza erraietatik sortzen Mansillako hormartean
Merengea dantzatzen Elebetz fabrika okupatuan
biluzik paseatzen Kutxileria kalean
maitasun oparoaz gozatzen Xahoren sortetxean

pasaporterik gabe munduaren periferiatan
dabil

Puta beltz euskalduna
garraxika
oraina errekamaran
hatza katuan
tiroka
ta-ta-ta-ta
idatzi du harresi txarrantxatuetan
BIZITZA ALA HIL!

(1) Babesik gabe dago inermea dena. Ixiar Rozas *Beltzuria*. 138. orrian. Kapitalismo basatiak eta gizarte kontsumistak gezatua, ahalgabetua, apenas nortasunik gabe utzia.



**Jabier Gallaga Ruiz**
1960
Lasarte-Oria

1997ko azaroaren 26tik hona dago espetxean.

Centro Penitenciario de Alcolea
Apdo. 479
14015 Córdoba



Por lo demás, pocos cambios por aquí. La forma de vida no ha cambiado nada; eso sí, por lo menos hemos visto salir en libertad (condicional) a un compañero de patio, no nuestro, Hassan, el islamista. ¡Jode! Y ahora acabo de ver en la TV que a uno que estuvo aquí, Fco. Javier, un anarquista chileno. Le acaban de caer 12 años (lo de la basílica del Pilar); bueno, es lo que hay.

Te tendría que contar lo de mis agujetas (las que "debería" tener, pero que no tengo). Y es que ya he vuelto a correr para ponerme en forma, pero hoy no…. hoy hacía fresco (por no decir frío) y no he hecho nada, aparte de pasear.

Por cierto, con esto del paseo te puedo contar una anécdota. Ya sabes que, como es lógico, paseamos longitudinalmente (a lo largo del patio), excepto en invierno a la tarde, a última hora, que paseamos a lo ancho que es donde da el sol. Pues en una de estas, según paseábamos: "¡cuidado! ¡cuidado!". Era para no pisar un escarabajo; los únicos "bichos" a exterminar (en el patio) son los grillos, las avispas y las hormigas; bueno, con las hormigas, menos el cabrón de Gorka. Que el cabrón de él las alimenta con los azucarillos. Los demás bichos los respetamos; bueno, a algunos mosquitos también les damos leña. El caso es que durante todo el día teniendo cuidado de no pisarlo, que no sé que hostias; bueno, tampoco es algo excepcional. El caso es que al día siguiente... igual, y además tenía unas manchas blancas en la cabeza (el bicho era negro), así que... ¿qué te imaginas que hicimos? Hacerle nada, solo que... nos dimos cuenta (o eso decidimos, no vaya a ser que consultes con un siquiatra para ver qué avería tengo). Pues eso, nos dimos cuenta que era "el espíritu" (la presencia de Hassan). Evidentemente, las manchas blancas eran del palestino, así que todos los días nada más salir al patio era lo primero que hacíamos, bueno, o lo segundo (que lo primero es liarse un cigarrillo ¡Y no es el primero de la mañana!).

Pues, eso: lo primero que hacíamos era buscarle para no tener un accidente y aplastarlo ¡Y no veas cómo lo cuidamos! Si lo veíamos un poco amuermado lo poníamos al sol. El muy tonto se metió en un hormiguero y hubo que rescatarlo y quitarle todas las hormigas. Un día estaba yo leyendo en la mesa y estaba con los pies levantados y mirando al suelo. "¿Qué se ha caído?", me preguntaron, porque todos saben que mi vista no es muy buena, y yo: "Nada nada; que cuando me he sentado Hassan estaba al lado de la pata de la mesa y no lo veo", tenía miedo a pisarlo. Hale! Carrerita de Jon y Pepe para buscarlo, y nada, estaba paseando a un par de metros de la mesa. No veas cómo lo cuidamos, o mejor dicho lo "cuidábamos", porque el domingo (yo no salí al patio) apareció explotado. Sniiiffff. Pero Jon le hizo un buen funeral, lo amortajó (con un papelillo blanco) y lo entierró; eso sí, cometió un pequeño fallo: le faltan unos cuantos grados para que esté mirando a la Meca. Eso sí; lo hizo lo mejor posible. Ahora solo nos falta encontrar alguna pieza con forma de media luna para ponerle encima, que en la pared ya está marcado. Ese día también nos arrancaron la planta del patio; bueno, en realidad es lo que vosotros consideraríais una "mala hierba", pero es lo único verde que había en el patio. La cuidábamos como una flor, la regábamos y eso, pero parece que hasta eso les jode. Es la segunda vez que nos la arrancan, pero el dicho de que "la mala hierba nunca muere" es verdad. ¡Ha vuelto a salir! Y, ni que fuera una planta tropical, no veas a la velocidad que crece; eso sí, fijo que la volverán a arrancar. ¡Pena que no sea urticante!.



**Olatz Lasagabaster Anza**
1979
Usurbil

2009ko ekainaren 24tik hona espetxean.

Centro Penitenciario Valencia III
Apdo. 1.002
46220 Picassent - Valencia

## 1984. 2016. Waswalito. Alacant

Begira zaituen edonork, zure begirada garbia eta benetako irribarrea, bihotzetik ateratzen den irribarrea, jasoko ditu trukean. Beti eta betirako. Izan ere, instante hura betirako gordea geratu zen klik batean. Eta hortxe topatu zaitut paperean; pozik. Ahoa, eta batez ere, begiak irribarrez, AK-47a eskuineko sorbaldan zintzilik eta ezkerreko bularrean, zure semea. Indarra, alaitasuna, maitasuna eta xamurtasuna segundu bakar batean harrapatuta. 1984an Waswaliton, Nikaraguan hartutakoa da irudia eta zure irribarreak erabateko naturaltasunez erakusten du askorentzat hain naturala ez dena: emakume armatua gizonentzat gordetako munduan, emetasuna harro aldarrikatzen, bizitza- sortzaile gisa semea elikatzen, etorkizuna elikatzen. Honezkero sorbaldan fusilik kargatu gabe baina hilabete gutxi batzuen buruan alaba bularrean izango dut neuk ere, eta denbora eta espazioaren mugak gaindituta, bat egin dut zurekin. Bat egin dute gure periferiek. 1984. 2016. Waswalito. Alacant. Zeinen urrun eta zeinen gertu. Hari ikusezin batek lotzen gaituela sentitu dut; bizitza sortzeko gai izan gara heriotzarako prestatutako eremuetan eta gure bularrek mundu hobea elikatuko dutenaren ilusioak batu gaitu gure ametsek bat eginez.

...Eta jada erabiltzen ez ditugun fusil horien katuan hatza jarrita, puta beltz euskaldunak ez bezala, ta-ta-ta-ta BIZITZA ALA BIZITZA oihukatzen dugu biok, ozen eta ixli-ixilik...

*Usurbil, euskal preso politikoa Alacanteko espetxetik*



**Ekhiñe Eizagirre Zubiaurre**
1984
Zarautz

Atxilotze data: 2013ko maiatzak 7a.
2017ko azaroaren 14an irten zen kalera!

Hamaika bertso argitaratu ditu han eta hemen.
Olerki bilduma liburu bat argitaratu du:
*Alde erantzira nabil* (Susa, 2016).

## Bazterreko ahotsak

Etxetik desterratua
(peri)ferian kotizatua
kalea eguneroko eszena
iragarkitan inoiz agertuko ez dena.
Inposatutako kaioletatik
egunero ihesi dabilena
gerrak bortxatu eta eraildako
erle beltzaren eztena
zirrikitu orotatik
plazerez destilatzen dena.

Ez-ulertua,
TranSanta Maria
ez ama, ez birjina
lumadun azalgabe ahats zikina,
gorputz matxino
gormant alaena!
Karrika ilunak
dizdizka lehertzen dituena.
Ostadar kolorez hegaldatuz
eta aldrebestuz dena!

Arbaso, lur eta baso
bide zuzenak maite ez dituena.
Sabel, esku, sorleku.
Ukendu eta gordeleku.
Jakintza, hitza, ekintza,
suen inguruan saltoka
eta dantzan gabiltza.

Dama adar okerra,
emagin, belagin, indigena
sutan erre zintuztena
ez gaur, ez bihar, ez atzo
erraustu ezin, ordea,
gu guztion sena
menderik mende bizirik dirauena.



**Mikel Orbegozo Etxarri**
1979
Intxaurrondo

Atxilotze data: 2005eko otsailaren 17a.

Hamaikatxo proiektutan bere margo eta irudien arrastoa aurkitu liteke. Ataramiñekookin bat *Preso Nago* (2010), *Preso Nago 2* (2013) eta *Ilargiraino!* (2015) ilustrazio liburuak argitaratu ditu.

Badajoz-Prisión Provincial
Carretera de Olivenza, km 7,3
06071 Badajoz




KEPA GOGOAN 1




KEPA GOGOAN 2


KEPA - KEPITA
KEPA! ADI! MIAKETA EGINGO DIGUTE!
A VER, KEPITA, ABRA LA BOLSA!
OIGA! SERÉ PEQUEÑO, PERO CONMIGO NO SE TOME ESAS CONFIANZAS DE LLAMARME "KEPITA" QUE LA TENEMOS!
PE... PERO... SI SOLO LE DIGO QUE LA BOLSA PITA! QUE - PITA!
A!




LA GALLINA VASCA




LA GALLINA VASCA




IRUTXULO 2016.12.04



**Itziar Moreno Martinez**
1982
Bilbo

Atxilotze data: 2011ko apirilaren 10a.

Roanne
Centre de Détention
Rue, Georges Mandel
B.P. 10.008
42311 Roanne Cédex
Frantzia



**Sergio Polo Escobes**
1972
Sopela

1999ko martxotik hona dago espetxean.

Centro Penitenciario Botafuego
11206 Algeciras
Cádiz



**Oier Andueza Antxia**
1975
Durango

Atxilotze data: 2001. urtean.

Centro penitenciario Murcia II
Paraje Los Charcos
30191 Campos del Río
Murcia

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**$Z^2$**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014.*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain. *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa. *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*



**KEPA DEL HOYO HERNANDEZ**

Almendralejo 1970
Badajoz 2017.07.31

Burdin hotsak iluntasuna
itzalek zelatan lekua
denak balio du eusteko
beste errealitatean bizitzeko.

Begira eta ikusi ez
pentsatu baina esan ezer ez
izara txuri tartean
amets bukaezina bilatzean
alde egiteko lagun nahian
amets gaiztoa uzteko atzean
bihar berdina izango delakoan.

Burdinak zelatan
iluntasunean
berriz zuregana
hor Askatasuna.

Ilunsentia, bada gaua
gerizak egote urtua
ta ilargia ari da sortzen
bere magalean berriz jasotzen.

Gauaz gau zugana narama
kateak, jada deusestutako zama
eta azkenean aske naiz oso
zin dagizut ez dute lortuko
Hemen eustea, hori borroka!
Askatasun osora ttanttaka
geroaren alde bultzaka

ba gaude bizirik
eta aurrera beti

Kepa del Hoyo Hernandez
Ametsen liburua

ataramiñe